

# Erromintxel

**Erromintxela** (baita *errumanzel* eta *erremaitzela* ere[2]) ijito edo buhame euskaldunen eta haien hizkeraren izena da. Erromintxela ez da hizkuntza, ez eta dialektoa ere: pagadolektoa da, «hizkuntza apurtua», euskara eta erromaniera batzen dituena.[3][4] Erromaniera linguistikaren baitan *para-erromaniera* multzoan sailkatu ohi da, hiztegi arloan jatorrizko erromani hizkuntzaren lexikoa hein handiz gordetzen duelako, baina aldiz gramatikaren arloan erromanieraren ezaugarriak galdu eta beste hizkuntza batenak hartu dituelako, kasu honetan euskararenak.[5] Hortaz erromintxelak erromanieraren hiztegia eta euskararen gramatika uztartzen ditu.

*Egaxu* da ijitoak ez direnei deitzeko darabilten izena. Kalo kulturako ijitoei aldiz, *hankagorri* deitzeko ohitura dute. Hori erromintxelen talde-sentimenduaren froga izan daiteke.

XV. mendean Europako iparraldetik etorri eta egun Lapurdiko kostaldean, Zuberoako mendi inguruetan, Nafarroa Garaian, Gipuzkoan eta Bizkaian bizirik dirauen talde etniko baten mintzaira da erromintxela.[4]

**Erromintxela**

Erromintxela hitz egiten den eremua.

| | |
|---|---|
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Espainia eta Frantzia |
| **Hiztunak** | 500-1000 inguru (1997an)[1] |
| **Eskualdea** | Euskal Herria |
| **Araugilea** | ez du |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>Hizkuntza euroasiarrak<br>Indoeuropar hizkuntzak<br>Indo-irandar hizkuntzak<br>Indoariar hizkuntzak<br>Central Indo-Aryan languages (en)<br>erromaniera | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | hizkuntza azentuala eta hizkuntza fusionatzailea |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-3** | emx |
| **Ethnologue** | emx (http://www.ethnologue.com/language/emx) |
| **Glottolog** | erro1240 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/erro1240) |

## Eduki-taula


**Hizkuntza**

**Etimologia**

**Ikerketak**

**Hizkuntza-ezaugarriak**

- Fonologia
- Morfologia
- Aditz sorrera
- Izenak
- Zenbakiak
- Adjektibo eta adberbioak
- Izenordainak
- Adibideak

**Hizkuntzaren egoera**

**Historia**

**Erromintxela euskal literaturan**

Ikus, gainera
Erreferentziak
Kanpo estekak
Kanpo estekak

# Hizkuntza

Erromaniera eta euskara batzetik sortutako mintzoa da erromintxela, Euskal Herriko buhame edo ijito jendeek hitz egin izan dutena. Oso gutxi ikertu da: Resurreccion Maria Azkuek erromintxelezko hitz gutxi batzuk bere hiztegian jaso bazituen ere, azken urteotan Josune Muñoz filologoa izan da euskararen eta erromanieraren nahastura hori sakon ikertzen lehena, eta bostehun hitz inguru biltzea lortu du.

Erromaniera hizkuntzalariek diote erromintxela pagodolekto edo *broken spoke* bat dela, hau da, erromani hizkuntzaren dialekto baten eta bertako hizkuntzaren artean sortutako hizkera nahastua. Morfologia eta gramatika euskararenak ditu. Aditzak ere euskararenak dira, eta tokian tokiko euskalkien ezaugarriekin erabiltzen dituzte; bizkaitarrek bizkaierakoak, lapurtarrek lapurterakoak... Lexikoa, ordea, erabat da erromintxela, horregatik euskaldunei ulergaitza egiten zaigu hizkera hau. Gainera, oso bizkor hitz egiten da, izan ere, bere garaian horixe zen erromintxelaren helburua, *egaxu*ek, euskaldunek, ulertuko ez zuten hizkera izatea.[4]

Euskal Herrian barna 500 erromintxel inguru omen daude. Askok badakite kaloa, gaztelania edo euskara ere, eta hiruretan hitz egiteko gai denik ere bada. Etxeberria deitura oso ohikoa da haien artean.[4] Hegoaldean hiztun gehienak laurogei urtetik gorakoak dira, eta gazteagoek ulertu bai, baina ez dakite erromintxelez hitz egiten. Iparraldean, oraindik ere, hiru belaunalditan, erromintxela eguneroko hizkuntza da buhame familia batzuetan.

Erromintxelari gehienbat *erromintxela* esaten diote erdaretan ere. Badira bakanago erabiltzen diren beste sinonimo batzuk ere:

- Ingelesez: *Basque calo*[6] (Euskal Herriko kaloa)
- Gaztelaniaz: *caló vasco* [7] (Euskal Herriko kaloa)
- Frantsesez: *euskado-romani*[8][9]

# Etimologia

Erromintxela hitzaren etimologia ezezaguna da guztiz, oso hitz berria delako eta hiztunek ere jatorriz ez zutelako erabiltzen.[10] Lehen erromintxelez aritzen zirenei *ijito*, *ungriano* edo *buhame* deitzen zitzaien.[1] Baliteke *erromes* eta *mintzaira* hitzen lotunetik ekarria izatea.

# Ikerketak

- 1885. urtean hasi ziren mintzo honen ikerketak, Justin Cenac-Moncautek aipatzen duenez. Honek Ipar Euskal Herrian topatu zituen zenbait hiztun.
- Victor de Rochas soziologo frantziarrak 1876ko *Les Parias de France et d'Espagne (cagots et bohémiens)* bere liburuan azaldu zuen Ipar Euskal Herrian bizi ziren ijitoak ez zirela frantsesez aritzen baizik eta euskaraz.
- 1905. urteko Resurreccion Maria Azkueren *Diccionario Vasco-Español-Francés* lanean erromintxelezko hitz batzuk ageri dira. Horietako gehienak delinkuentziarekin zerikusia

dutenak dira: Xorkatu (lapurtu), txuri (labana), txor (lapur) eta gisa horretakoak.

- 1906an Jean Baptiste Daranatzek *Eskualdun Ona* egunkarian hiztegi bat argitaratu zuen.[11]
- 1921. urtean Berraondo eta Oiarbidek azterketa sakona egin zuten.[4][12]
- 1926an Pierre Lhandek, Resurreccion Maria Azkuek hogei urte lehenago egin zuen moduan, erromintxelezko hitz batzuk eman zituen bere hiztegian.[4][13]
- 1986. urtean Federico Krutwigek *Eusko Ikaskuntzen Nazioarteko Aldizkaria*n «Los gitanos vascos» artikulua argitaratu zuen. Artikulu labur hartan erromintxelaren morfologia azaldu zuen.[14]

XX. mendearen bukaeran, erromintxel herriaren historiari, bizimoduari eta hizkuntzari buruz ikerketa-proiektua hasi zen, Kale Dor Kayiko gobernuz kanpoko erakundeak bultzatuta eta Euskaltzaindiaren eta Euskal Herriko Unibertsitatearen diru-laguntzarekin. Egitasmo horretan, Josune Muñoz izan da hizkuntza sakonki ikertu duen lehen euskalaria.[4] Horretarako Elias Lopez de Mungia historialariaren laguntza izan du.

Kale Dor Kayiko da erromaniera bultzatu eta sustatzeko lan egiten duen erakundea. Erakundekideek 1990eko hamarkadan oraindino erromintxelez aritzen zenik bazela jakin zuten Alizia Stürtzeren *"Agotak, juduak eta ijitoak Euskal Herrian"* artikuluaren bidez.[10] Erakundearen helburua Nafarroa Garaian eta Ipar Euskal Herrian erromintxelak duen egoera aztertzea da.[10]

# Hizkuntza-ezaugarriak

Adituen iritziz, erromintxelen hizkuntza *broken spoke* edo *pagodolekto* bat da, erromani hizkuntzak eta euskarak elkar topatzetik sortua. Gaztelaniarekin izandako harremanaren ondorioz Kalo hizkuntza sortu zen modu berean, euskaratik hartutako mailegu linguistikoekin erromintxela eratorri zen. Josune Muñoz filologoaren ustez, nahiz eta erabat frogatu gabe dagoen, erromintxelek erromanieraren kalderash dialektoa ekarri zuten,[4] eta erromintxela kalderasharen eta euskararen nahastetik sortu bide zen. Hortaz, ez da kalotik eratorria nahiz eta gaur egun kalozko eta euskarazko hitz batzuk ere erabiltzen dituen. Morfologia eta sintaxia euskararenak ditu. Aditzak ere euskararenak dira, eta tokian tokiko euskalkien ezaugarriak ditu; bizkaitarrek mendebaldekoak, lapurtarrek lapurterazkoak.[4] Lexikoa, ordea, erabat erromintxela da. Josune Muñozek bostehun hitzeko hiztegi bat osatzea lortu du.

Mintzaira ulertezina da bai euskaldunentzat bai kalo hiztunentzat.[4] Hala ere kaloaren erro bera duenez, badaude zenbait hitz antzekoak direnak. Hona hemen adibide batzuk:

| Erromintxela | Kalo | Erroa | Esanahia euskaraz |
|---|---|---|---|
| dikelatu | diquelar | dikháv | ikusi |
| kamatu | camelar | kamáv | maite |
| kurratu | currar, currelar | butjí keráv | lan egin |
| mangatu | mangar | mangáv | Erromintxelez, "eskatu". Kaloz, "lapurtu" |
| txoratu | chorar | čoráv | lapurtu |
| zuautu | sobar | sováv | lo egin |
| ankhai | acay | | begia |
| egaxi | gachí | gaží | Ijito ez den emakumea |
| elakri-lumia | lumi | lumni | Erromintxelez, "fama txarreko emakumea". Kaloz eta erromanieraz, "emagaldua" |
| | | | |

| | | | |
|---|---|---|---|
| fula | ful | khul | kaka |
| jero | jeró | šeró | Erromintxelez, "burua". Kaloz, "aurpegia" |
| kher | queli | kher | etxea |
| oxtaben | estaribén | astaripe | prisoi |
| pindru | pinrel | punró | oin |
| txau | chaval | čhavó | seme |
| kalu | caló | kaló | beltza |
| aimenge | menda | *mánge* "ni(k)", agian *aménge* "gu (k)" (datibo) | Ni(k) |

## Fonologia

Egun ez dago hizkuntzaren deskribapen fonologikoak erakusten duen paradigmarik. Beraz, ezin da jakin zein den grafemen balio fonetiko zehatza edo zuzenean euskarazko fonemekin elkarrekikotasunik duten.

## Morfologia

Erromintxelaren ezaugarri morfologikoen adibideak:[1][10][14][15][16]

| Erromintxela | Euskara | Erroa | Funtzioa, erromintxelez | Adibidea |
|---|---|---|---|---|
| -a | -a | Euskarazko *-a* | Atzizki absolutiboa | *phiria* "lapikoa" |
| -ak | -ak | Euskarazko *-ak* | atzizki plurala | *sokak* "berokiak" |
| -(a)n | -(a)n | Euskarazko *-(a)n* | atzizki inesiboa | *khertsiman* "tabernan" |
| -(a)z | -(a)z | Euskarazko *-(a)z* | atzizki instrumentala | *jakaz* "suaz" |
| -(e)k | -(e)k | Euskarazko *-(e)k* | atzizki ergatiboa | *hire dui ankhai koloek* "zure bi begi beltzek" |
| -ena | -ena | Euskarazko *-ena* | atzizki superlatiboa | *loloena* "gorriena" |
| -(e)ko(a) | -(e)ko(a) | Euskarazko *-(e)ko(a)* | atzizki leku-genitiboa | *muirako* "bokaleko" |
| -(e)rak | -(e)rat (Ipar Euskal Herrian) | Euskarazko *-(e)ra(t)* | atzizki adlatiboa | *txaribelerak* "ohera" |
| -pen | -pen | Euskarazko *-pen* | menpekotasuna adierazteko atzizkia | |
| -ra | -ra | Euskarazko *-ra* | atzizki adlatiboa | *penintinora* "errekara" |
| -tu | -tu | Euskarazko *-tu* | aditzak sortzen duen atzizkia | *dekhatu* "ikusi" |
| -tzea | -tzea | Euskarazko *-tzea* | aditz-izena atzizki sortzailea | |

| -tzen | -t(z)en | Euskarazko *-t(z)en* | gerundioaren atzizki sortzailea | *kherautzen* "egiten" |
|---|---|---|---|---|

## Aditz sorrera

Aditz gehienak erromanierazko erroek eta euskarazko *-tu* atzizkiak sortuak dira. Hona hemen adibide batzuk:[1][14][15]

| Erromintxela | Euskara | Erromaniera[17] |
|---|---|---|
| brikhindu[11] | euria izan | brišínd |
| burrinkatu[11] | harrapatu | (astaráv) |
| dikelatu, dekhatu[15] | ikusi | dikháv |
| erromitu {eŕomitu)[13] | ezkondu | |
| gazinain kheautu[13] | erditu | |
| goli kherautu, goli keautu[13] | kantatu | (gilábav) |
| kamatu[15] | maitatu | kamáv |
| kerau, keau, kherautu[15], keautu[14][13] | egin | keráv |
| kurratu | lan egin | butjí keráv |
| kurrautu {kuŕautu}[13] | jo | |
| kuti[15][13] | begiratu | dikáv |
| letu[15][13] | hartz | lav |
| mahutu[13], mautu[13] | hil | mu(da)ráv |
| mangatu[14][13] | eskatu | mangáv |
| mukautu[13] | bukatu | |
| najin[13] | bukatu | |
| papira-keautu[13] | idatzi | (skirív, ramóv) |
| parrautu {paŕautu}[13] | ebaki | |
| pekatu[14][13] | janaria prestatu | pakáv |
| pekhautu[15] | erre | |
| piautu[14][13] | edan | pjav |
| tarautu[13], tazautu[13] | ito | |
| teilaitu[13] | jan | xav |
| tetxalitu, texalitu[13] | ibili | |
| txanatu[14] | jakin | žanáv |
| txiautu[13] | besteen aurretik sartu | |
| txoratu[14], xorkatu[13] {s̃orkatu}[16] | lapurtu | čoráv |
| ufalitu[13] | ihes egin | |
| | lapurtu | |

| | | |
|---|---|---|
| xordo keautu[13] | | |
| zuautu[14][13] | lo egin | sováv |

Erromintxelezko aditzen erabilera euskalkiena bera da:

| Erromintxela[15] | Nafar-lapurtera[18] |
|---|---|
| ajinen duk[19] | izanen duk |
| dekhatu nuen | ikusi nuen |
| dinat | diñat |
| erantzi nauzkon | erantzi nauzkan |
| ...haizen hi | ...haizen hi |
| kamatu nuen | maitatu nuen |
| letu hindudan | hartu hintudan |
| nintzan | nintzan |
| pekhautzen nina | erretzen naute |
| pekhautu nintzan | erre nintzen |
| pekhautzen niagon | erretzen niagon |
| tetxalitzen zan | ibiltzen zan |
| zethorren | zetorren |
| zoaz | zoaz |

Ezezko perpausa *na/nagi*[14][11] (erromanieraz *na/níči*; euskaraz *ez/ezetz*) da. Euskarazko "bai" adierazteko, *ua* (erromanieraz *va*) erabiltzen da.[11]

## Izenak

Izen gehienek erromanierazko erroa dute, normalean euskarazko atzizkiez lotuta:

| Erromintxela | Euskara | Erromaniera[17] |
|---|---|---|
| angi[20] | ezti | (avdžin) |
| ankhai[15] | begi | (jakh) |
| asinia[11] | botila | (fláša) |
| balitxo[11] | txerriki | baló ("txerri" eta euskal atzizkia) |
| barki[11], barku[11] | ardi | bakró |
| barkitxu[10], barkotiñu[11] | arkume | bakro "ardia", eta euskarazko -*txu* txikigarria |
| basta, baste[14] | esku | vas(t) |
| bato[1], batu[11] | aita | dad |
| bliku[11] | txerri | *balikanó mas* |
| bluiak[11] | poliziak | (policájcur) |
| budar[14][11] | ate | vudár |

| | | |
|---|---|---|
| burrinkatzea[11] | harrapatze | |
| dantzari[15] | dantzari | (euskarazko erroa) |
| dibezi[15][13] | egun | djes |
| duta[14][13] | argi | udút |
| egaxi[14][13][11] | ijitoa ez dena (emakumea) | gaží |
| egaxo[13], ogaxo[14][13], egaxu[13] | ijitoa ez dena (gizona) | gažó |
| elakri[14], ellakria[21] | neska(til) | raklí |
| elakri-lumia[16][11] | emagaldu | |
| eramaite[15] | erama(i)te | |
| eratsa[13][11], erhatsa[13], erhatza[11] | ahate | (goca) |
| erromi {eŕomi}[14][13], errumi[16][11] | 1 senar 2 ezkontza[22] | rom |
| erromiti[11] | emazte | romní |
| erromni | emazte, emakume | romní |
| erromitzea[14] | eskontza | (bjáv) |
| erromitzeko {eŕomitzeko}[13], erromitzekoa[14] | eraztun | (angruští) |
| fula[13] | kaka | khul |
| futralo[13][11] | pats | |
| gata[15][13][11] | ator | gad |
| gazin[15][13] | haur | |
| giltizinia[13] | giltza | (čája) |
| goani[14][13][11] | zaldi | (grast) |
| goia[11] | lukainka | goj |
| goli[15][13] | kanta | gilí |
| grasnia[16][11], gasnia[13][16], grasmiña[23], gra[14] | zaldi | gras(t) |
| guru[14], gurru {guŕu}[13] | idi | gurúv |
| guruni[14] | behi | gurumni |
| gurutiño[16][11] | txahal | *gurúv* (eta euskarazko txikigarria *-tiño*) |
| haize[15] | haize | (euskarazko erroa) |
| jak[14], jaka[16][13][11], zaka[13], aka[14] | su | jag |
| jakes[16][13] | gazta | (királ) |
| jera[13][24] | asto | (esa) |
| jero[13] | buru | šeró |

| | | |
|---|---|---|
| jeroko[13] | txapela | |
| juiben[16][11] | galtzak | (kálca) |
| kalabera[13][11] | buru | (šeró) |
| kalleria {kaĺeria}[13] | zilarreria | |
| kalo[13], kalu[16][11] | kafe | (káfa) |
| kalo-kasta[15] | ijito-kastaro | |
| kamatze[15] | maitzatze | < kamáv |
| kangei[13][24][11], kangey[16] | eliza | kangerí |
| kani[16][13][11] | oilo | khajní |
| kaxta[14][13] | zur | kašt |
| kaxtain parruntzeko {paŕuntzeko}[13] | aizkora | |
| kher[15], khe[13], kere[16][13], khere[14], kerea[11] | etxe | kher |
| kereko-egaxia {kereko-egašia}[16][11] | etxeko andre | |
| kereko-egaxoa {kereko-egašoa}[16], kereko-ogaxoa[11] | etxeko jauna | |
| ker-barna[13] | gaztelu | (koštola) |
| ker[14][11], qer[14] | asto | (esa) |
| kero, keru[13][11] | buru | šeró |
| khertsima[13][15] | taberna | |
| kiala[16][13][11], kilako[16][13] | gazta | királ |
| kilalo[13] | haize hotza | |
| kirkila[13][11] | babarruna | (fusúj) |
| konitza[13], koanits[13][11] | saski | kóžnica |
| laia[16][13][11] | jauna | |
| lajai[13], olajai[13], lakaia[11] | apaiz | (rašáj) |
| laphail[16][13], lakhaia[16] | apaiz | (rašáj) |
| latzia[15][16][13][11] | gau | |
| lona[16][13][11] | gatza | lon |
| mahutzea[14], mautzia[11] | hiltzea | mu(da)ráv eta euskarazko *-tzea* atzizkia |
| malabana[13][11] | gantzu | (thuló mas) |
| mandro[13][15] | ogi | manró |
| mangatzia[11] | eske | mangáv eta euskarazko *-tzea* atzizkia |
| marrun[16] {maŕun)[13] | senar | |
| mas[14][11], maz[14], maza[13] | haragi | mas |

| | | |
|---|---|---|
| megazin[13][11] | haur | |
| milleka[16] {miĺeka}[13] | arto | |
| milota[13] | ogi | (manró) |
| milotare-pekautzeko[13] | labe | |
| Mimakaro[16][13] | Ama Birjina | |
| miruni[16][13] | emakume | |
| mitxai[15][13], {mitš̃ai}[16] | alaba | čhaj |
| mol[15], mola[13][11] | ardo | mol |
| mullon {muĺon}[13][11], mullu {muĺu}[13] | mando | |
| ñandro[16][13][11], gnandro[13] | arraultz | anró |
| oxtaben[13][20][11], oxtaban {oš̃taban}[16] | gartzela | astaripe |
| paba[13], phabana[16], pabana[11] | sagar | phabáj |
| paba-mola[13] | sagardo | |
| panin[14][13], panina[16][11], pañia[1] | ur | pají |
| panineko[13], paninekoa[14] | pitxer | |
| paninekoain burrinkatzeko {buŕinkatzeko}[13] | sarea | |
| paninbaru[13], panin barua[14] | ibai, itsaso | (derjáv, márja) |
| panintino[13], panin tiñua[14], penintino[15] | erreka | (len) |
| pangua[10] | larre | |
| panizua[16][13][11] | arto | |
| papin[13], papina[16] | antzar | papin |
| papira[13] | paper | papíri |
| pindru, pindrua[16][13][11], pindro[15], prindo[13] | hanka | punró |
| pindrotakoa[14] | galtzak | kálca |
| piri, piria[16][13][11] | lapiko | pirí |
| pora[16][13][11] | urdaila | per |
| potozi[13] | diruzorro | |
| prindotako[13] | galtzerdi | pinró |
| soka[15][16][13][11] | beroki | |
| sumia[11] | zopa | zumí |
| thazautzia[11] | itotze | taslaráv eta euskarazko *-tzea* atzizkia |
| tekadi[16][13], tekari[13] | hatz | (naj) |
| ternu[13] | gazte | |
| txai[15][13] {tš̃ai}[16] | | čhaj |

| | | |
|---|---|---|
| txaja[13] | aza | (šax) |
| txara[13] | belar | čar |
| txaripen[14], txaribel[15] | ohe | (vodro) |
| txau[13], xau[19] | seme | čhavó |
| txiautzia[11] | eraso | ?, eta euskarazko *-tzea* atzizkia |
| txipa[10] | izen | (aláv) |
| txiautu[13] | ijito | |
| txohi[13], txoki[15] | gona | |
| txohipen[13][11] | hutsalezko lapurreta | |
| txor[14], txora[13][11] {tš̃ora}[16] | lapur | čor |
| txuri[14][13][11] | aizto | čhurí |
| xordo[13][11], txorda[13] {tš̃orda}[16] | lapurketa | čoripé |
| xukel[13] {š̃ukel}[16], txukel[14], txukela[13][11] {tš̃ukela}[16] | txakur | žukél |
| xukelen-fula {š̃ukelen-fula}[16], txukelen fula[11] | zakur-putza | |
| xukel-tino keautzale[13] | txakur emea | |
| zuautzeko[13], zuautzekoa[14] | estalki | |
| zitzaia[13][20], txitxai[13][11] {tš̃itš̃ai}[16] | katu | |
| zume[16][13], sume[13] | zopa | zumí |
| zungulu[16][13], sungulu[13][11] | tabako | (duháno) |
| zut[14], zuta[13], xut[14], txuta[13], txuta[11] {tš̃uta}[16] | esne | thud |

## Zenbakiak

Hona hemen erromintxelezko zenbakien zerrenda[1][14][15]

| Erromintxela | Euskara | Erromaniera[17] |
|---|---|---|
| jek[13], jeka[14], eka[14][13] | bat | jék |
| dui[14][15] | bi | dúj |
| trin[14][15] | hiru | trín |
| higa[13] | hiru | (trín) |
| pantxe[14] | bost | panž |

## Adjektibo eta adberbioak

Erromintxelezko adjektiboak eta adberbioak erromanierazko errotik ekarriak izan ohi dira[1][14][15]:

| Erromintxela | Euskara | Erromaniera[17] |
|---|---|---|
| baro[15], baru[14][11] | handi | baró |
| bokali[14] | gose | bokh |
| buter[14] | asko, ainitz | but |
| dibilo[14] | erotua | dilino |
| dibilotua[15] | erotua | < dilino |
| gabe[15] | gabe | (euskal erroa) |
| eta[15] | eta | (euskal erroa) |
| geroz[15] | geroz | (euskal erroa) |
| hautsi[15] | hautsi | (euskal erroa) |
| kalu[14] | beltz | kaló |
| kaxkani[13] | zikoitz | |
| kilalo[11] | hotz | šilaló |
| latxo[13], latxu[14] | on | lačhó |
| londo[15] | samur | |
| nazaro[14][13][16][11], lazaro[13] | eri | nasvaló |
| palian[10] | ondoan | |
| parno[15] | garbi | parnó |
| telian[14] | behean | téla |
| tiñu[14][16][11] | txiki | cignó |
| upre[14][15] | gain(ean), gora | opré |

## Izenordainak

Erromintxelezko izenordainak bi hizkuntzetatik —euskaratik eta erromanieratik— datoz[14][15]:

| Erromintxela | Euskara | Erromaniera[17] |
|---|---|---|
| aimenge[14] | ni | *mánge* "ni", agian *aménge* "gu" (datiboak) |
| ene[15] | ene | (euskal erroa) |
| harekin[15] | harekin | (euskal erroa) |
| hari[15] | hari | (euskal erroa) |
| hartan[15] | hartan | (euskal erroa) |
| heure[15] | heure | (euskal erroa) |
| hi[15] | hi | (euskal erroa) |
| hire[15] | hire | (euskal erroa) |

| | | |
|---|---|---|
| hiretzat[15] | hiretzat | (euskal erroa) |
| mindroa[15] | nirea | miró |
| neure[15] | neure | (euskal erroa) |
| ni[15] | ni | (euskal erroa) |

## Adibideak

Lerroarteko bertsioa duten adibideak:[14][15]

1. khereko ogaxoa
2. khere-ko ogaxo-a
3. etxeko jauna

1. hiretzat goli kherautzen dinat
2. hire-tzat goli kerau-tzen d-i-na-t
3. hiretzat abesten dinat

Beste adibideak:[10][16][13][19]

- Erromintxelez: txuria txiautu
- Euskaraz: Sartu aiztoa besteen aurretik

- Erromintxelez: kuti zarrak upre!
- Euskaraz: gora begira ezak!

- Erromintxelez: xaua, goli keau zak, mol buterrago ajinen duk
- Euskaraz: mutila, kanta ezak, ardo gehiago izanen duk

- Erromintxelez: txaia, brastando keau zak!
- Euskaraz: mutila, azkar korrika egizak!

- Erromintxelez: txipa nola duzu?
- Euskaraz: nola duzu izena?

- Erromintxelez: masak eta barkitxuak panguan daoz
- Euskaraz: ardiak eta arkumeak larrean daude

- Erromintxelez: nire kera zurearen palian dao, hemendik obetoao dikatuko duzu
- Euskaraz: nire etxea zurearen ondoan dago, hemendik hobeto ikusiko duzu

# Hizkuntzaren egoera

Hego Euskal Herrian egun 500 erromintxel hiztun inguru daude, hau da erroldatutako 21.000 ijitoen %2 ; Ipar Euskal Herrian, berriz, beste 500 bizi dira.[1] Hego Euskal Herrian dauden hiztun gehienek 80 urte baino gehiago dituzte, gainera, gutxiago dira erraz aritzen direnak (batzuk gaztelaniaz, euskaraz eta kaloz ere erraz hitz egiten dutenak). Talde etnikoko adin ertainekoak elebidun pasiboak izan ohi dira. Gazteak, berriz, euskaraz edo gaztelaniaz baino ez dira mintzo . Ipar Euskal Herrian, aldiz, belaunaldi arteko transmisioa badabil oraindik ere.[4]

Hala ere, euskal jatorriko ijitoen artean erromintxel-hiztunen portzentajea aipatutakoa baino handiagoa omen da, XX. mendeko industrializazioan kalo hiztun askok migratu baitzuen Hego Euskal Herrira.[25]

# Historia

Erromintxela sortu zuten ijitoak XV. mendean Europako iparraldetik Euskal Herrira migratutako kalderash hiztunak ziren. Muñozen eta Lopez de Mungiaren ustetan, euskararen eta erromanieraren arteko antzekotasun morfologikoak eta fonologikoak izateak asko erraztu zuen ijitoen mintzairak euskararen morfologia hartzea.[10]

Taldea laster gizarteratu zen Euskal Herrian, tokian tokiko euskalkiak erabiliz,[26] euskal herritar emakumeen eskubideak onartuz, eta bertsolaritzan eta pilotan arituz.[10][27] Baliteke askok Euskal Herrian geratzea aukeratzea Europan jasandako jazarpenetik ihes egiteko.[10][25] Nafarroa Garaian XVI. mendean aipaturiko lehendabiziko abizenak Bustamante, Hernández, Aragonés, Zamora, Malla, Heredia, Cortés, Campo, Ribera, Iturbide, Gaiferos, García, Navarro, Moyno edo Moreno izan ziren, baina hurrengo mendeetan Barrutia, Etxeberria edo Agirretarrak agertu ziren.[28] Hala ere, Euskal Herrian ere jasan zuten jazarpena. Adibidez, 1549an Tuteran bildutako Nafarroako Gorteek erresuman sartzea galarazi zieten, ehun zigorradaren mehatxupean. Bi urte geroago, Iruñean bildu eta zigorra zehaztu zuten: 14 eta 60 urte artekoak izan behar ziren.[28] 1602an Nafarroako Gorteek lege berri bat atera zuten «erromes» guztiak atxilotzeko eta sei urteko galera zigorra ezartzeko.[2]

XVIII. menderako jarrera aldatu egin zen eta ijitoak gizarteratzea zen helburu berria. Adibidez Nafarroako Gorteek 1780. eta 1781. urteen artean 23. Legea atera zuten, «agintariek bildu, kokaguneak eta lan onestak bil diezazkieketen...».[2]

Erromintxelek beren burua *ijitotzat* hartzen badute ere, *kalo* ijitoetatik bereizi izan dira,[27] eta *xangogorri* edo *hankagorri* da kalo ijitoei deitzeko erabili duten izena.[1][4]

# Erromintxela euskal literaturan

Euskal idazle batzuek erromintxela erabili izan dute sorkuntza literarioan. *Kama-goli* erromintxelezko poema jasotzen du Jon Miranderen *Poemak 1950-1966* antologiak,[15] gero Mikel Markezek *Kantu Erotikoak* diskorako musikatu zuena. Koldo Izagirreren *Metxa esaten dioten Agirretar baten ibili herrenak* eta *Agirre Zaharraren kartzelaldi berriak* eleberrietan, pertsonaia batzuek erromintxelezko hitzak erabiltzen dituzte.

# Ikus, gainera

- Ijitoak
- Kaskarotak
- Euskal Herriko hizkuntzak
- Euskaldunak
- Euskalkiak

# Erreferentziak


1. ↑ a b c d e f g h i j Argüello, Xabier: «Ijito euskaldunen arrastoan», *El País*, 2008-01-14 (online (http://www.elpais.com/articulo/pais/vasco/Ijito/euskaldunen/arrastoan/elpepuesppvs/20080114elpvas_8/Tes)).
2. ↑ a b c (Gaztelaniaz) «Gitano» (http://www.euskomedia.org/aunamendi/76974), *Auñamendi Eusko Entziklopedia*.
3. ↑ Unai Brea: «Hiretzat goli kherautzen dinat, erromeetako gazi mindroa» (http://www.argia.com/argia-astekaria/2129/erromintxela/osoa), *Argia*, 2008-03-23.
4. ↑ a b c d e f g h i j k l Lore Agirrezabal: «Erromintxela, euskal ijitoen hizkera» (http://www.argia.com/argia-astekaria/1913/erromintxela-euskal-ijitoen-hizkera), *Argia*, 2003-09-28.
5. ↑ (Ingelesez) Matras, Y. (2002). *A Linguistic Introduction*. Cambridge University Press. ISBN 0-521-63165-3
6. ↑ (Ingelesez) «Languages of Spain» (http://www.ethnologue.com/show_country.asp?name=ES), *Ethnologue*.
7. ↑ (Gaztelaniaz) «caló vasco» (http://es.wikilingue.com/ca/Cal%C3%B3_vasco), *Wikilingue*.
8. ↑ (Frantsesez) «La langue rromani en Europe» (http://portal-lem.com/map-carte_rromani.html), *Langues d'Europe et de la Méditerranée* (LEM).
9. ↑ (Frantsesez) Nicole Lougarot, *Bohémiens*, Gatuzain Argitaletxea: 2009, ISBN 2-913842-50-X
10. ↑ a b c d e f g h i j k l Brea, Unai: «Hiretzat goli kherautzen dinat, erromeetako gazi mindroa» (http://www.argia.com/argia-astekaria/2129/erromintxela/osoa), *Argia*, Donostia, 2008.
11. ↑ a b c d e f g h i j k l m n o p q r s t u v w x y z aa ab ac ad ae af ag ah ai aj ak al am an ao ap aq ar as at au av aw ax ay az ba bb bc bd be bf bg bh bi bj bk bl bm bn bo bp bq br bs bt bu bv bw bx by (Frantsesez) Daranatz, Jean-Baptiste «Les Bohémiens du Pays Basque», *Eskualdun Ona*, 38. zenbakia (1906ko iraila).
12. ↑ (Gaztelaniaz) Berraondo, R.: «La euskera de los gitanos», *Euskalerriaren Alde - Euskal Kulturaren aldizkaria*, 1921.
13. ↑ a b c d e f g h i j k l m n o p q r s t u v w x y z aa ab ac ad ae af ag ah ai aj ak al am an ao ap aq ar as at au av aw ax ay az ba bb bc bd be bf bg bh bi bj bk bl bm bn bo bp bq br bs bt bu bv bw bx by bz ca cb cc cd ce cf cg ch ci cj ck cl cm cn co cp cq cr cs ct cu cv cw cx cy cz da db dc dd de df dg dh di dj dk dl dm dn do dp dq dr ds dt du dv dw dx dy dz ea eb ec ed ee ef eg eh ei ej ek el em Lhande, Pierre: *Dictionnaire Basque-Français et Français-Basque*, Paris, 1926.
14. ↑ a b c d e f g h i j k l m n o p q r s t u v w x y z aa ab ac ad ae af ag ah ai aj ak al am an ao ap aq ar as at au av aw ax ay az ba bb bc bd be bf bg bh bi bj bk bl bm (Gaztelaniaz) Federico Krutwig Sagredo: «Los gitanos vascos», *Eusko Ikaskuntzen Nazioarteko Aldizkaria*, 31. zenbakia (1986). Online eskuragarri. (http://www.euskomedia.org/PDFAnlt/riev/3103830387.pdf)
15. ↑ a b c d e f g h i j k l m n o p q r s t u v w x y z aa ab ac ad ae af ag ah ai aj ak al am an ao ap aq ar as at au av aw ax ay az ba bb bc bd be bf Mirande, Jon *Poemak 1950-1966* Erein, Donostia (1984) online (http://klasikoak.armiarma.com/idazlanak/M/MirandePoemak025.htm)
16. ↑ a b c d e f g h i j k l m n o p q r s t u v w x y z aa ab ac ad ae af ag ah ai aj ak al am an ao ap aq ar as at au av aw ax ay az Azkue,

Resurreccion Maria (1905), *Diccionario Vasco-Español-Francés*, Bilbo, 1984.

17. ↑ a b c d e (Alemanez) Heinschink, Mozes & Krasa, Daniel: *Romani Wort für Wort*, Kauderwelsch 2004
18. ↑ (Frantsesez) Laffitte, Pierre: *Grammaire Basque Pour Tous*, Haize Garbia, Hendaia, 1981.
19. ↑ a b c Saizar, Joxemi eta Asurmendi, Mikel: «Argota: Hitz-jario ezezagun hori», *Argia*, 1704. zenbakia, Donostia, 1999 (online (http://www.argia.com/argia-astekaria/1704/argota-hitz-jario-ezezagun-hori)).
20. ↑ a b c Izagirre, Koldo: *Agirre zaharraren kartzelaldi berriak*, Elkar, 1999, ISBN 978-84-83331-439-5
21. ↑ Mitxelena, Koldo *Orotariko Euskal Hiztegia*, Euskaltzaindia, Bilbo, 1992.
22. ↑ Mitxelena, Koldo: *Orotariko Euskal Hiztegia*, Euskaltzaindia, Bilbo, 1992.
23. ↑ Mitxelena, Koldo: *Orotariko Euskal Hiztegia*, Euskaltzaindia, Bilbo, 1995.
24. ↑ a b Mitxelena, Koldo *Diccionario General Vasco - Orotariko Euskal Hiztegia X Jad-Kop* Euskaltzaindia, Bilbao (1997)
25. ↑ a b Eusko Jaurlaritza: *Plan Vasco para la promoción integral y participación social del pueblo gitano* (2005)
26. ↑ Muñagorri Garmendia, Lander. (2016-10-20). «Euskaratik sortutako hizkerak» (http://www.berria.eus/paperekoa/1838/038/001/2016-10-20/euskaratik_sortutako_hizkerak.htm) *Berria*.
27. ↑ a b Vizarraga, Óscar. (2001). «Erromintxela: notas para una investigación sociolingüística» *I Tchatchipen* (Bartzelona: Instituto Romanó) **33**.
28. ↑ a b (Gaztelaniaz) Egaña, Iñaki. (2009). *Mil nuevas noticias insólitas del país de los vascos.* (https://books.google.es/books?id=d9RaIIo6L0kC&pg=PA323&lpg=PA323&dq=Mil+nuevas+noticias+ins%C3%B3litas+del+pa%C3%ADs+de+los+vascos&source=bl&ots=8X8EwbXavt&sig=EDh2HoWEmwLqO8iB6c6GnwtAAVo&hl=en&sa=X&ved=0ahUKEwiR3cyov8TJAhUFPxoKHQYeCCwQ6AEIKjAC#v=onepage&q=Mil%20nuevas%20noticias%20ins%C3%B3litas%20del%20pa%C3%ADs%20de%20los%20vascos&f=false) Txalaparta, 79 eta 82 or. ISBN 9788481365436.

# Kanpo estekak

- (Gaztelaniaz) Kale dor Kayiko elkartea (http://www.kaledorkayiko.org)
- (Gaztelaniaz) Erromintxelaren azterketa soziolinguistikoa (http://www.kaledorkayiko.org/ERROMINTXELA_anagrama.html)
- El Paisen argitaratutako artikulua. (http://elpais.com/diario/2008/01/14/paisvasco/1200343206_850215.html)
- Unai Brearen errepotajea Argian. (http://www.argia.com/argia-astekaria/docs/2129/pdf/p50-51.pdf)

# Kanpo estekak

| Autoritate kontrola | Wikimedia proiektuak · Datuak: Q1122188 |
|---|---|

